# JAUNAREN BIZTUERAKO PAZKO-DOMEKEA

## SARRERAKO OHARKIZUNA

Pazko jai handi honetan, egun on!

Kristo biztu da. Aleluia! Egun santua da guztiontzat, gure jairik handiena dogu Pazko eguna.

Bart, gaueko eleizkizunean, barri pozgarri hau emon jakun: *"Zuek bilatzen dozuen Jesus biztu egin da! Ez dago hilobian".* Eleizeak orain bi mila urte jaso eta harrezkero urtero ospatu dauan barri on pozgarri honek batu gaitu altara inguru honetara. Prestau daiguzan gure gogo-bihotzak urteko eukaristiarik nagusienean parte hartzeko.

Jesús resucitó. Esta es nuestra fe. Y porque El resucitó, nuestra vida tiene ya una dimensión nueva, un nuevo sentido. Su dimensión se prolonga a la vida eterna; su sentido hacia el Señor, el amor de los unos a los otros, la alegría de la fe.

**BIZTU DA JAUNA EGIAZ: ALELUIA!**

Zatoze pozik Jaunagana.
Gora ta gora Hari kanta.
Jauna da Jainko,
Jauna da Jainko bere gaitu
Harek gu egin ta eratu.

## BATZARRA UR BEDEINKATUAZ TXIPRIZTINTZEA

Atzo gauean bedeinkatutako uraz txipriztinduko gaitu orain abadeak. Ur honek pekatuen parkamenerako emon jakun Bateoa gogoratuko deusku eta orduan hartutako grazia barriztauko dau gugan.

*(Ur bedeinkatuaz txipriztindu)*

Jaungoiko ahalguztidunak garbitu gaizala pekatutik
eta, Eukaristia honen bidez,
bere erreinuko mahaian jarteko gai egin gagizala. Amen.

**Abestia: Hartuko dogu ura pozik osasunaren iturritik**

## AINTZA ZERUETAN

Jauna biztu dalako pozez gainezka, kantau daigun gure Jaungoikoaren aintza.

## HITZAREN LITURGIA

**Ap Eg 10, 34a. 37-43:**

Pazkoaldi osoan zehar, lehenengo irakurgaia *Apostoluen Eginak* deitzen dan liburutik hartzen da. Apostoluen esana gure fedearen oinarria da. Euren antzera, izan gaitezan geu ere Kristo biztuaren testigu.

A la base de nuestra fe, hay unos hechos históricos. Pero la adhesión de la fe se da a la Palabra de Dios predicada por los "testigos" que El ha designado

**Erantzun-Salmoa: 117. Salmoa**

Poztasunez beterik bat egin daigun salmisteagaz gure eskerrona adieraziaz

La Iglesia repite incansablemente en este día de Resurrección la aclamación "Este es el día en que actuó el Señor: sea nuestra alegría y nuestro gozo"

*"Hau eguna hau Jaunak egina,*
*gure poza ta gure atsegina."*

Dad gracias al Señor, porque es bueno,
porque es eterna su misericordia.
Diga la casa de Israel:
Eterna es su misericordia. R.

La diestra del Señor es poderosa,
la diestra del Señor es excelsa.
No he de morir, viviré
para contar las hazañas del Señor. R.

La piedra que desecharon los arquitectos,
es ahora la piedra angular.
Es el Señor quien lo ha hecho,
ha sido un milagro patente. R.

**Kol 3, 1-4:**

San Pauloren bizitza guztia Kristo bizi dala iragartea izan zan. Bateatuta gagozanok, Jesusen biztueratik bizi gara eta ezin geintekez bizi izan edozelan, Jesusen erara baino.

No despreciamos los bienes de la tierra, para nosotros se revalorizan a la luz de los "bienes de allá arriba" El bautismo nos hace testimonios de un nuevo estilo de vida cristiana.

**Jn 20, 1-9:**

Los apóstoles vieron y creyeron. Nuestra fe se asienta en el testimonio de los apóstoles. La fe también exige profundizar en el

conocimiento
Prestau gaitezan Ebanjelioa entzuteko: Jesusen biztuerea iragarriko deusku. Goratu dagigun Jauna, *"Aleluia"*-ren kantu alaiaz.

## SINISMENA AUTORTZEA

Gure sinismenaren oinarria Kristo berbiztua da. Eleiza osoagaz batera, autortu daigun guztiok alkartzen gaituan fede hori.

## JAINKO HERRIAREN OTOITZA

Senideok: hilen artetik biztu dana geure artean dago. Bera bitarteko dogula, aurkeztu deioguzan gure eskariak Jaungoiko Aitari:

—Eleizearen alde: askatasun guztiaz, mundu osoan zehar, iragarri dagiala Jesusen biztuerearen barri pozgarria. Egin daigun otoitz.

—Por todos los hombres y mujeres para que la Pascua de Cristo traiga la paz, la justicia, la verdadera libertad, y lleguemos a respetarnos y ayudarnos como hermanos y hermanas. Egin daigun otoitz.

—Por cuantos sufren, por cuantos son víctimas del egoísmo y la injusticia, por quienes han perdido la esperanza, para que encuentren la fortaleza y el consuelo de Cristo resucitado en nuestra solidaridad humana y cristiana. Egin daigun otoitz.

—Eukaristia hau ospatzeko alkartu garean guztion alde, gure etxeko eta lagunen alde: pazko pozak bete gaizala eta geure bizitzeaz agertu daigula Jesus berbiztuagan sinisteak merezi dauala. Egin daigun otoitz.

Aita ona, isuri Eleizearen eta mundu osoaren gainera zeure bedeinkapen ugaria. Jesukristo gure Jaun berbiztuaren bitartez. Amen.

## PREFAZIOA

Beti emon behar deutsaguz eskerrak Jaungoiko Aitari; baina, gaur, aparteko eran: Jesusek heriotzea garaitu daualako eta amaibako bizitzearen bidea zabaldu deuskulako.

## JAUNARTZEAN

**R/. Biztu da Kristo, Aleluia. Guregan dago, Aleluia.**

—Jainkoak dau-ta gaur Kristo biztu: Aleluia!
Bere indarrez biztuko gaitu: Aleluia, Aleluia. R/.

—Gure gorputza dau-ta egoitza: Aleluia!
Orain berekin gaitu bat egin: Aleluia, Aleluia. R/.

—Jaunari kanta, goresmen eman: Aleluia!
bai bihotz eta bai gorputzean; Aleluia, Aleluia. R/.

**AZKEN AGURRA**

Senideok: Pazko Jaiei hasierea emon deutsegu; berrogeitamar egunez luzatuko ditugu Pazko Jaiok, Jesusen biztuera eta geure biztuerea ospatuz. Eleizatik urten aurretik, jaso dagigun Pazko eguneko **Bedeinkapen Nagusia.**

**BEDEINKAPENA**

—Bere Semearen biztueraz haren seme-alaba egin gaituen Jainkoak poztu eta bedeinkatu zagiezala. R/. Amen.

—Zuon sinismena autortuz, bataioan Kristorekin biztu zareenok, orain zintzo bizi izanez Bere lekuko izatera bialduak lortu dagizuela harekin bat egitea. R/. Amen.

† Bedeinkatu eta gorde gaizala Jainko ahalguztidunak:
Aitak eta Semeak eta Espiritu Santuak. R/. Amen.

**ZERU-LURREN ERREGINA**: aleluia!, aleluia!
Biztu jaku Jesus Jauna: Aleluia!

—Zuregandik sortu dana: Aleluia.
Hilobitik biztu da-ta: Aleluia!

—Otoitz zure Semeari: Aleluia!
bizia deigun danori: Aleluia!

† Zoaze Jaunaren bakean: Aleluia, aleluia!
—Eskerrak Jainkoari: Aleluia, aleluia!